# ESPETXE POLITIKA HILTZAILEA

Martxoaren 14an hil da etxean preso, Anjel Figeroa. Gaixorik, espetxetik irtetea lortu arren Espainiako espetxe administrazioaren menpe eta haren ardurapean zendu baita. Gobernu espainiarraren ardurapean.

Beste heriotza segidan, Xabier Lopez Peñarena. Frantziar espetxe eta justizia administrazioaren ardurapean. Eri zen, eta kalean behar zuenean hil da preso. Ezin pasatzen utzi, frantses arduradunen jokaera laidogarri eta makabroa, beste behin ere. Bahiturik, isolaturik, azken arnasetan non eta nola zegoen senideei informazioa ukatuz. Baita hil geroztik ere, maltzurki.

Gure dolumin sentikorrenak bion senide eta lagunei!

Bi heriotz berri, espetxe politikaren zerrenda luzean. Eri ziren biak, espetxe politikak erahil ditu biak. Espetxe politika hiltzailea baita! Sakabanaketa hiltzailea baita! Heriotz zigorrak arduradun zehatzak ditu. Estatuen gerra estrategian murgildurik dirautenak. Euskal presookin politika kriminala gauzatzen jarraitzen dutenak. Gatazka politikoa eta bere ondorioak ETAri leporatzen diotenak. Diskrezioa lege eta legea diskrezional egiten dutenak eta bi zerraldo berrion aurrean ere ardura saihestu nahi izan dutenak. Inmunitate politiko eta penala betiereko uste dutenak.

Konponbideari bizkar ematen jarraitzen baitiote. Gertaera hauen testuinguruan, ETA eta Gobernu espainolak(PSOE) konponbiderako irekitako gunearen deuseztapena iragarri du ETAk; salatu duenez, boterean den Gobernuaren(PP) temakeriaren ondorioz. Egoera politikoa larria da konponbide demokratikoaren alde gaudenontzat, gatazka luzatzeko arriskua handia baita.

Heriotzon artean aldiz, Iruñea-Bilbon Gatazkaren konponbidearen Foro soziala izan da. Gatazkaren ondorioen inguruan nazioarteko esperientzia eta irakaspenak ekarri dira, gogoeta sakonduz. Konponbidea zaildu eta atzeratzea behartu nahi gaituzte, baina konponbide demokratikoaren aldeko ahalegin eta indar oro bide berriak irekitzeko oinarri garrantzitsua dira. Aieteko adierazpena nazioartean modu esanguratsuan jasotzen ari den babesa bezala. Estrasburgoko auzian, oraino 'injinaritza juridiko'rako tartea badutela aurreratu arren, espetxealdia luzatzeko doktrinaren kontrako posizionamendu sozial eta insitituzional zabala bezala. Herriaren, herritarren erantzun eta mobilizazio iraunkorrak bezala.

Heriotz hauei beste gertakariak gehitu nahi dizkiegu, salaketa ohar honetan. Jaengo espetxetik bueltan Jabi Martinez kidearen lagunek izandako istripua, sakabanaketaren hamaikagarrena! Eta Joseba Vizan errefuxiatuaren aitagiarreba Jose Marcoren heriotza, hura bisitatzera joana Brasil urrunera.

Saminak eta amorruak ez digu norabidea lausotuko. Konpromisoa hartu du EPPK-k eta bururaino eramango dugu. Egoeraren larritasunak eta gertaera hits hauek orain tamainako erantzuna behar dute. Herriak ez du barkatuko!

Inoiz baino ozenago, Euskal Presoak Euskal Herrira! Sakabanaketa hiltzailea!
Amnistia, autodeterminazioa !

**EPPK**
**Euskal Herria bihotzean, 2013ko apirilan**